**1.-Nola dago osatua Euskal Preso Politikoen Kolektiboa? Zein da bere eginkizuna? Nola aukeratu du Mintzakide talde berria?**
**MI.-**Euskal Herriaren aldeko askapen borrokagatik espetxeratuta gauden kideok osatzen dugu EPPK. Askapen borrokaren aldi bakoitzean preso politikoek antolaketa berezia izan dute kartzela barruan. Frankismoan eta trantsizioaren lehen urtetan antolakunde politiko eta armatu desberdinetako kideak zeuden espetxeetan, eta orduan bakoitzaren antolakundearen arabera elkartu eta antolatzen zuten beren komuna. Denborak aurrera egin arau, espetxeetan ETArekin zerikusia zuten kideek osatzen zuten kolektiboaren gehiengo nagusia. Azken hamarkadan ordea, errepresioa zorroztu ahala jendartean arlo eta zeregin oso desberdinetan ari diren antolakundeetako pertsonak kartzelatu eta zigortu dituzte. Errealitate hori bere baitan islatzen jakin zuen Kolektiboak 2003ko eztabaidan ondoriotu bezala. Kolektiboaren eginkizun nagusia Euskal Herriaren aldeko borrokaren kausaz espetxeratua denari kartzela-administrazioaren aurrean gure eskubideak bermatuz babesa ematea eta kartzelak ezartzen dituen mugak muga militanteari bere ekinbide politikoan jarraitzeko aukera ematea da, hezkuntza pertsonalean sakonduz eta Euskal Herriarekiko lotura mantentzen lagunduz.

**JO.-**Giltzapean ez da amaitzen gure konpromiso politikoa, gure neurrian gure herriaren aldeko borrokan jarraitzen dugu Kolektiboan antolatuta. 2011ko udazkenean abiatu genuen eztabaidaren baitan, ildo politikoa zehaztu eta antolakuntza berritzearekin batera egoera eta garai berriei erantzuteko Kolektiboaren ahotsa izango diren kideen indarberritzea beharrezkoa dela ikusi dugu. Mikel Albisu, Marixol Iparragirre eta Lorentxa Gimon Frantziar Estatuan, eta Jon Olarra, Xabier Alegria eta Anabel Egues Espainiar Estatuan izan gara hautatuak Kolektiboaren Mintzakide gisa. Beste hamalau kide, zazpina estatu bakoitzean, Mintzakidetza ondoko talde gisa izendatuak izan dira. Mintzakidetzaren espetxeaz kanpoko eragiletza bermatzeko ere Laguntza Taldea izendatu dugu.

**2.-Presoek itxaropenez hartu dute garai berria?**
**MA.-**Kartzela barruotan ohituta gaude bat-bateko sentimenduak, bai pozezkoak eta bai etsipenezkoak urruntasunaren galbahetik iragaztera. Ez du inork edukiko guk baino gogo gehiago kartzelatik irteteko. Eta ez du ere inork jakingo guk baino hobeto zenbateko zailtasunez betea dagoen irteerako bide hori. Askapen borrokak eman duen urrats bakoitza itxaropen eta pozez hartu ohi dugu. Oraingo hau ere hala hartu dugu. Ederki konturatu gara gatazka ETAren amaierarekin identifikatu izan dutenak erresuminduta dabiltzala, Ezker abertzaleak eta askapen borrokak egin dituen aurrerako urratsekin haserre eta are beldurtuta daudela. Horrek prozesua eta aro berria nola hala zapuztu nahi izatera daramatzala dirudi. Eta konponbidearen etsai eta arerio agertzen diren horien ustez, euskal preso politikook baino ehizaki hobea ez omen dago helburu hori betetzeko.

**AE.-**Gu zigortuz euskal jendartea zigortu eta ahal izanez gero prozesua arrailetatik atera nahiko lukete. Hileotan Ezker abertzaleak eta euskal jendarteak oro har erakutsi duen heldutasunak garai berria are itxaropen handiagoz begiratzera garamatza. Itxaropen bare eta asaldagaitzez. Erantzukizunez, arduraz, zintzotasunez hartu ditugu garai honetako erronkak. Nazio kontzientzia indartu, sendotu eta dagozkigun eskubideak gauzatzeko bidean indarrak aktibatzeko urrats garrantzitsuak emateko garaiak dira, eta gu prest gaude Kolektiboaren kapitala norabide horretan iraultzeko.

**3.-Urriaren 20an ETAk hartutako erabakiak EPPKren ikuspuntua aldatzen du ezinbestean?**
**MI.-**Ez da soilik ETAren erabakia EPPKren ikuspuntua aldatzera daramana. Ezker abertzale osoak, eta baita guk ere, egindako hausnarketak dakar presoon Kolektiboaren eta presoon inguruko aldarrikapenen ikuspuntua aldatzera. Ez da inongo sekretua aurreko negoziaketa edota elkarrizketa prozesuetan Gobernuek presoon gaia jartzen zutela mahai gainean gatazka politikoaren funtsei ez heltzeko. Oraingoan, guztiz alderantziz ari da gertatzen, presoon gaia oztopatzearekin saiatzen ari dira prozesua berari balazta jartzen.

**JO-**ETAk hartutako erabakiak eszenatoki berri bat sortu du denontzat. Apustu politikoarekiko konpromisoan

beste ondorio bat izan da, ez da gauetik goizera heldu. Askapen borrokaren lekukoa, euskal herritar ororen eskuetan daukagula jakiteak, ikuspuntu aldaketa baino tamainako ardura eskatzen duelakoan gaude, eta guri ere noski zuzenean eragiten digu. Inoiz ez bezala bahitu politiko gisa darabilte Kolektiboa, trukerako erabili nahi gaituzte, garaipena irudikatzeko.

**4.-Presoen Kolektiboak Gernikako akordioa sinatu zuen joan den irailaren 25ean. Ze balio ematen diozue akordio horri aurrera begira?**
**MA.-** Hitzarmen horrek gatazka gainditu osteko zoruan lehen zutoinak non ezarri erakusten digu. Akordioa abiapuntu bat da, lan tresna eraginkorra indar metaketari begira, behar bati erantzuten diona, Gatazkaren konponbidea helburu duen Akordio politikoaren beharra eta berau errespetarazteko konpromisoa azpimarratzen duena.

**AE.-**Gernikako Akordioa konponbide demokratikoaren norabidean erreferente politiko nagusia da guretzat, atxikimendu sozial eta politiko zabala bilatzen duena. Zabaltzen eta indartzen jarraitu behar dena Estatuak konponbide demokratikoaren ibilbidera lerratzea lortzeko. 50 urte baino 500 urte gutxienez badituen gatazka konponbidean jartzeko. Kolektiboak naturalki du bere lekua bertan, horregatik sinatu genuen guk ere akordioa. Presoon egoerari dagokionez, xantaiarik gabe gure eskubideen defentsa egiten baitu Akordioak.

**5.-Zein dira une honetan presoek bizi dituzten egoera larrienak? Egoera horiek zeren ondorio dira?**
**MI.-**Pertsona soil gisa, preso politiko gisa, oinarrizko eskubideak urratuak dauzkagu: Izaera politikoa aitortzen digute, modu kolektiboan zigortzen baigaituzte, gure izaera eta behar politikoak ukatzen dizkiguten bitartean. Egoera muturrekoenak ezagunak dira, gaixotasun larriak dituzten kideak ororen buru. Hor dago ere zigorra bukatu eta bidegabeki luzatu dieten kideen egoera. Badago guztioi neurri batean edo bestean eragiten digun egoera bat sakabanaketa. Gure senide eta lagunak sufritzen ikustea da latzena presoarentzat.

**JO.-**. Euskal preso politikoon kasuan zigor erantsiak berariaz aplikatzen dira, helburua gu suntsitzea baita, politikoki ezin bada fisikoki ahulduz. Euskal preso politikoen aurkako kartzela-politikaren diseinatzaile eta betearazleek oso argi dute zertan ari diren. Hara hor gure premia larriak! Gure Herriaren premiak!

**6.-Nondik hasi beharko litzateke aldatzen orain espetxe politika?**
**MA.-** Espetxe politikak estrategia zapaltzaile bati erantzuten dio. Estatuei dagokie egitura zapaltzailea indargabetzea. Salbuespeneko egoera oro desaktibatzeak eta presoei dagozkigun eskubideak errespetatzeak aldaketa nabarmena ekarriko luke berez. Fase honetan gatazkari ikuspegi demokratiko batetik heltzeko apustua egin dugun neurrian ezinbestekoa da ere espetxe politika molde horretara egokitzea. Gerra tresna izan dena, hemendik aurrera onartezina dela ikusarazi behar diegu. Egingo duten urratsik txikienak ere prozesua elikatu eta eszenatoki berriari bultzada emango liokeela badakite, hori da koska !

**AE.-** Oraintxe jaso dugu Espainiako Auzitegi Konstituzionalaren erabaki politikoa, mozorro juridikoz jantzia, non 2006tik 80 kide inguru lotsagabeki bahituta mantentzeko neurria ontzat eman duten. Espainiak aurrera urratsa eman du erabaki honekin presoon kontrako erasoan, egoera politikoak, ezker abertzalearen hautuak, gure gizarteak eta nazioarteko ahotsek bestelako norabidea exijitzen diotenean. Abiatutako prozesuaren kontrako urratsa da. Herri honen nahi eta hitzaren aurrez aurreko erasoa, biziarteko espetxealdia babestu eta espetxe politika bera indartzen duen heinean. Besarkada eta adore kementsuena helarazi nahiko genieke hitz hauen bidez espetxealdi luze eta gogorra daramaten borrokalari guztioi !!

**7.-Presoen aferak lehentasuna al du konponbide prozesu orokorrean?**
**JO.-**Helburua Autodeterminazioa eta Amnistia izanik, argi izendatuta daude zeintzuk diren gatazka gainditzeko nahitaez ukitu eta konpondu beharko diren gaiak: gatazkaren sustraiak eta gatazkaren ondorioak. Norabide horretan presoen kaleratzea eta iheslarien etxeratzea gaur bertatik hastea ezinbesteko urratsa izango litzateke. Gatazka politikoaren konponbide osoan urrats kualitatiboa suposatuko lukeelarik.

**MI.-** Gatazkaren ondorioei irtenbidea ematea, prozesu demokratikoaren lehen fasean kokatzen dugu, prozesu politikoari bultzada eta aukera berriak irekitzen dizkiola ulertuta. Beraz, lehentasuna gatazka konpontzea izanik, presoon egoera konpontzea norabide horretan aurrera egiteko lagungarri gisa ikusi beharko lukete eragile guztiek, baita Espainia eta Frantziako gobernuak ere. EPPK izpiritu horretan ari da lanean.

**8.-Nola ikusten du presoen kolektiboak amnistiaren aldarrikapena? Zein da zuen iritzia Espainiako agintariek amnistiarik edota indultu kolektiborik ez dela izango esanez egin dituzten adierazpenei buruz?**

**MA.-**Espainiako agintariek etsipena hedatu nahi dute euskal jendartean. Konponbide erabatekoaren bidean presoen egoera desblokeatuz prozesuak bide egoki eta atzeraezina hartuko zukeen planteamendua usteltzeko. Prozesuaren abiada edonola mantsotu nahian dabiltza. Presook Estatuen bahitu gisa helburu horretarako tresna aproposa garela uste dute. Ate baten ordez, gero eta aho estuagoa duen inbututik pasatu beharko dugula irudikatzen ari dira, hain estua pertsona makurtu eta belaunikatu gabe bertatik pasatzea ezinezkoa dela. Oraingoz zer ez duten egingo esanez eta presook egin beharko genukeenaren errezeta egunez egun mikaztuz eta irents ezinagoa eginez beren posizioa zaildu eta ahuldu baino ez dira egiten ari.

**AE.-** Amnisitiaren aldekoak gara baina alferrikakoa izango da 77an bezala ez badiogu gatazka politikoaren arrazoiei heltzen, horregatik diogu prozesua integrala dela. Amnistia prozesu dinamiko bat izan daiteke erabakitzeko eskubidea onartzen duen egoera demokratikoa lortu arte. Amnistia, prozesuan aurrera joan ahala urratuko dugu, orain has daitezela behingoz egoera larrienak desblokeatzen!

**9.-Nola eta noizko ikusten duzue presoen kaleratzea? Irteera indibidualak/irteera kolektiboa eztabaida errotua dagoela dirudi? EPPK-k onartuko al luke Irlandan erabilitako formula, hau da banan-banan gauzatutako irtenbide kolektiboa?**
**MI.-** Presoak izugarrizko ardura du bere kaleratzea proiektatzeko orduan, noizbait gauzatuko den amets horrek sortzen dituen esperantza edo etsipenengatik. Kartzela urteek eta norberaren adinak ere kontuan hartzeko aldagaiak dira. EPPKri dagokionez ez dago irteera indibidualik, EPPKko kide den presoa bakarrik ateratzen denean ere Kolektibo baten partaide izanda ateratzen da. Kolektibo bateko partaide izanik egin diogu aurre kartzelari eta garatu dugu kartzelan gure militantzia, Kolektibo bateko partaide izanik ere gurutzatuko dugu askatasuneranzko atea.

**JO.-**EPPKren kontra neurri kolektiboak hartzen dituzte tratamendu indibidualizatuaren faltsukeria haizatuz. Egungoa indargabetu eta irtenbidea kolektiboa izan beharko da edo ez da izango. Irlandan beste baldintza batzuetan iritsi ziren galdera horri erantzuteko unera, Ostiral santuko akordio politikoaren ondorenean, inposizio politikoa altxatu ondorenean beraz, nazioarteko batzorde independiente batek aztertu zuen kolektiboaren kaleratzea noiz eta nola izango zen. Gure kasuan, gurea propioa osatu beharko dugu. Gu Anoetako negoziazio eskemari jarraituz, Erakunde armatu eta estatuen arteko esparru negoziatzailean kokatuak gaude, akordio zabalak ekarriko du kaleratzea. ETAri, bere errailari dagokion eremuan presoen egoera eta kaleratzeari begira eman ditzakeen urratsei dagokienez, gure aitortza luzatzen diogu.

**10.-Espainiako gobernuaren eta PPren jarrera eskema eta estrategia zaharretan murgilduta dago? Nola aldarazi daiteke?**
**MA.-**Garbi da garaitu/garaile eskeman gotortuta daudela, ez dagoela konponbidea ekar lezakeen fase batean murgiltzeko intentzio zantzurik. Eskema zaharrekin ari dira egoera berrian jokatzen. Aldiz, estrategia errepresiboa erabili edo babestu duten alderdien desgaste politikoa nabaria da Euskal Herrian. Baina, guk egingo dugun indarraren arabera izango da emaitza. Etsaiak erdipurdiko konponbide bat eszenifikatu nahiko du, guri da gatazka politikoaren benetako gakoak zehaztea eta horiei fermuki heltzea gure Herria Independentziarako atariraino eramateko.

**AE.-**Kartzelatik askapen prozesuarekin dugun engaiamendu erabatekoa berresten dugu. Kaleko ekimenen bidez gero eta biluziago utzi behar da ezezkoan gotortuta dagoen jarrera hori. Nazioartetik ere begi pare bat baino gehiago egongo da gertatzen ari den guztiari arreta handiz begira, eta bultzada handia eman diezaiokete prozesuari.

**11.-Nola baloratzen du EPPKk oro har presoen eskubideen alde euskal gizarteak erakutsi dituen konpromisoa eta mobilizatzeko gaitasuna (U7ko manifestazioa)?**
**JO.-**Urtea hasteko opari ezin hobea izan da. Mirespenez, harrotasunez, sekulako erakustaldia izan baita. Txalotu baino ezin dugu egin. Pozak ez gaitu itsutzen halere, eragile batzuen ausentzia oso nabarmen geratu baitzen Bilbon, bertan egoteari uko egin ziotenen posizio politikoa ahulduta dago geroztik. Tamainako mobilizazioa pozgarria izanda ere ezinbestekoa da lanean jarraitzea, bakoitza bere herriko egituretan antolatuz.

**MI.-** Milaka eta milaka euskal herritar ikusteak Bilbon pozez betetzen gaitu. Milaka eta milaka lagun horien konpromisioaz eta metatutako urtetako lanaz Herrira mugimendua jaio da. Herriz herri, auzoz auzo, eta elkar bultzatuz lortuko dugu orain mugiezinak direnak mugiaraztea.

**12.-Ba al dago antsietate sentimendurik kaleratzeko itxaropenaren inguruan? Zer esango zenieke senideei horri buruz?**

**MA.-**Etsipena eta itxaropen itsua biak ala biak dira baztertu beharrekoak. Badakigu zergatik hartu gintuzten atxilo, zergatik aplikatzen zaigun kartzela-erregimen anker hau eta baita gure askatasuna Euskal Herriak bizi duen zanpaketa-egoeraren gainditzearekin estu-estuki lotuta dagoela. Herriak aterako gaitu.

**AE.-**Senideei zer esan? Aurrera goazela elkarrekin bide horretan. Nolatan aurre egin egoera honi haiek gabe? Esan baino, senideek gugan islatuta ikusten dute nondik nora doan askapen-prozesuarekiko gure ustea. Horretan ardura handia dugu presook, gure militantzia politikoa lantzen eta gure hezkuntza pertsonala sakontzen, egoerarik zailenean egonda ere. Askatasuna da gure iparrorratza, norabide horretan prestatzen dihardugu gure burua espetxeratu gintuzten lehen unetik. 'Ilunpetan bizi denak argia amets'.

**13.-Zer eskatzen ari zarete zehazki konponbide prozesuan parte hartzeko eskubidea aldarrikatzen duzuenean?**
**MI.-** Gatazka politikoaren ondorio eta parte gara, horregatik kolektibo gisa prozesuan parte hartzeko eskubidea aldariikatzen dugu. Gure konpromiso politikoaren ondorioz bahituak gauzkate kartzelan beraz gure herriko errealitatean parte hartzeko eskubidea aldarrikatzen dugu kolektibo gisa. Horregatik eskatzen dugu estatus politikoa, gure betebehar politikoak baldintza ahalik eta egokienetan egiteko, kartzelan gauzkaten bitartean. Gutako bakoitzak ahaleginak egiten ditu preso dagoen bitartean bere herriko bizitza politikoan parte hartzen baina gure aldarrikapena urrunago doa kalean aktibo politikoak izaten jarraitu nahi dugu.

**JO.-** Euskal Herriratuak izan behar dugu eskubide guztien jabe, herriaren zerbitzura eskaini dugu, duguna, garena, eta zer esana badugulakoan gaude. Mundu guztia mintzo da gutaz, ze politika aplikatu behar zaigun, ze premiak ditugun, ze egoera bizi dugun…guk baino hobeto inork ez dakienean; badugu ahots propioa mintzakidetzaren eskutik.

**14.-Garai berri honetan askatasun eskaera zehatzak egin dituzue bai gaixo dauden presoek bai zigorra beteta daukatenek. Euskal Herriratzeko eskaera ere preso guztiek egin duzue. Zergatik eskaera horiek orain? Nolako erantzuna jaso duzue?**
**MI.-**Eskaera Kolektiboko kide guztiok egin dugu ofizialki, une aproposa iruditu zaigulako Kolektiboaren baitan bizi ditugun muturreko gaien inguruan agintariek urratsak eman ditzaten. Horrekin batera, konponbide prozesuan parte hartzeko dugun gogoa eta prestutasunaren erakusgarri ere izan dira ekimen horiek. Esku bat luzatu dugu Estatuei eskaera horiek eginez. Ez dute hartu nahi izan. Espainian ezezkoa erantzun badigute, Frantzian hori ere ez. Harrigarriki, gatazka konpontzeko bidean presoen auziarekin zer egin erabaki gabe dutela dirudi, eta norabidez aldatuko ez eta orain arteko ildo errepresiboan sakontzen jarraitzen dute. Eskaerok hilero pausatzen ditugu espetxe bakoitzean.

**AE**.-Gure aldetik, urtarrilaren 9-13 bitartean borrokaldia burutu dugu espetxe guztietan alde batetik urte bukaerako ekimen horiek babesteko, bestalde Bilboko herri mobilizazio orokorrarekin bat egiteko.

**15.-Frantziako asanbladak presoak gerturatzeko aukera onartu du. Nola baloratzen duzue, oro har, Frantziaren jokabidea presoekiko?**
**MA.-**Frantziak hitzez hitz bete izan ditu Espainiako kartzela agintaritzatik helarazi dizkioten ereduak Isolamendua, sakabanaketa, urruntzea; beti ere Frantziako kartzela-sistemara egokitua, zeina Espainiakoarekiko desberdina den. Frantziako jokabidea ankerragoa ere bada. Aspaldi utzi zion espainiarren jarraitzaile izateari. Euskal arazoa espainiar Estatuari dagokion arazo bat esanez estaltzen du bere menpe duen euskal eremuaren aurkako errepresioa. Harritzeko esperantza galdu behar ez bada ere, ez dirudi Frantziak egindako adierazpenez haratago presoen gaiaren konponbidean aitzindari izateko asmoz dabilenik.

**AE.-**Lapurdi, Behe Nafarroa eta Zuberoan alderdi guztietako politikariak agertzen direla bai presoen gaiarekin eta baita gatazkaren konponbidearekin kezkatuta. Presoon babes-taldeek egin duten xinaurri lan etengabea eta eskuratu lorpenak txapela kentzeko modukoak dira eta Estatu Frantzesetik lortu dituzten jarrera aldaketak, adierazpen hutsak izan arren, PPren gobernua bere jarreran gero eta bakartuagoa uzten dute. Dena den ezin dugu bukatu esan gabe, ekimenak eta urratsak direla balio dutena.

**16.-Konponbide prozesua desitxuratzeko, atzeratzeko edo usteltzeko asmoz estatuek presoen afera erabil dezaketela uste al duzue?**
**MA.-**Arestian emandako erantzunetan nahiko argi agertzen da horixe dela une honetan Espainiako gobernuak bederen abian jarri duen taktika. Euskal jendarteak presoen inguruan egindako eskaera indartsuari biktima batzuen auzia erabiltzen ari dira jaurtigai gisa, biktimak jarri nahi dituzte barrikada gisa konponbidearen norabidean, presoen aldeko oldarrak bertan tupust egin eta prozesua lokaztu edo errailetatik ateratzeko esperantzaz. Gatazkaren erroei erantzuteko eta irtenbidea bilatzeko denbora

irabazten ariko dira agian, Ezker abertzalea postura deserosoagoan kokatzeko. Edonola ere ez da batere jokabide arduratsua.

**JO.-**Urrats politikoak ematearen beldur direnez, presoen gaian urratsak ematea atzeratu dezakete. Baina, badakite lehenago edo beranduago iritsiko zaiela gatazkaren oinarrietara jo beharreko unea. Diskurtso ideologikoan sakontzeko aukera ematen die, prozesua edukiz hustu eta bere horretan izoztuz.. Hor koka daiteke PP, PSOE eta PNV-ek Espainiar parlamentuan sinaturiko Estatu Paktua. Guztion esku dago Euskal Herrian zabaldu berri den aro historikoa usteltzen ez uztea. Egunero lotu behar gatzaizkio borrokari, denok batera indarrez, ilusioz eta gogotsu ekinez erronkari, gaurko urratsak biharko aukera berriak dira. Funtsezkoa da herri dinamika indartsua bizirik mantentzea. Martxoko mobilizazioak lekuko, izan emakumearen eskubideen aldekoa, euskararen ofizialtasuna edota langileen Greba Orokorra arrakastatsua. Bat egiten dugu aldarrikapen-salaketa guztiokin, are indartsu eta eraginkorrago bilakatzeko deia luzatuz.

**17.-Harremanik izan al duzue Espainiako edo Frantziako agintariekin?**
**MI.-**Ez. Azken harreman zuzenak 2006ko prozesuaren testuinguruan eman ziren. Elkarrizketa hau profitatuz, deia luzatzen diegu bi Gobernuetako arduradunei, frantses nahiz espainol, EPPKren Mintzakidetzarekin bil daitezen dagozkigun eskubideen errespetu eta gauzatzea jorratzeko. Serioski joka dezaten deia egiten diegu, har dezatela gurekin haria. Gure oinarrizko eskubide demokratikoak errespetatuz, mintzatzeko eta urratsak emateko prest gaituzte, EPPkren mandatua dugu.

**18.-Bistan da espetxe-politikak ez duela Kolektiboa desagerrarazi. Hala ere, zenbateko mina jaso du? Preso asko daude, sakabanaketa handia, bakartze egoera larriak, 62 presok 20 urte baino gehiago daramate espetxean... Nolako eragina izan du horrek guztiak?**
**AE.-**Sendo mantentzea da gure garaipenik handiena. Koherentzia politikoaren kosteak kide batzuentzat bizitza bera galtzea ekarri du eta horrek ere guztiongan sortarazten du mina. Babesgabetasunaren zama handia da, isolamendu eta bakartze egoeretan, kundetan, zer esanik ez ezarritako kondena amaitzear duzula ez zarela irtengo esaten dizutenean, gaixo egon eta beharrezko duzun osasun arretarik jasotzen ez dugunean,…Sakabanaketaren eragina familiak nozitu beharrak, haiek egiten duten kilometro bakoitza, errepidetako arriskuak…min handia eragiten du.

**MA.-**Eragindako minaren zenbakiak gero eta ezagunagoak dira presoonganako elkartasun taldeek egindako lan etengabeari esker. Kolektiboari dagokionez, jasandako erasoa itzela izan da, eta duela 30 urte inork ez luke sinetsiko gainean erori zaion zigor zaparradari eutsiko ziokeenik. Sakabanaketak eta baita presoon elkartasun-taldeek eta abokatuek ere jasan dituzten erasoek babesgabetasun egoeran utzi dute Kolektiboa behin baino gehiagotan. Baina EPPK bizirik dago, eutsi dio. Espainiako gobernuak ez du nahi presoon kaleratzeak eraiki nahi duten kontakizuna itsustu eta sinesgarritasuna kentzea, baina kartzelen hormen artean bahituta daukaten gaitasun eta esperientzia politiko pilatua Euskal Herriaren askatasunaren alde kalean lanean ikustearen beldur ere bada.

**19-Zertan da Kolektiboaren baitan hasitako eztabaida? Noiz espero duzue ondorioak plazaratzea?**
**JO.-** Kolektiboa izate bizia da, Ezker Abertzalearen parte, Herri baten parte, ondorioz, eztabaida politiko iraunkor eta dinamikoan ari da uneoro. Elkarrizketa honen bidez urrats garrantzitsua ematen ari gara ezagutzera, antolakuntzari dagokionean Kolektiboaren ordezkaritza eta bitartekaritzaren izendapena. Hain zuzen, EPPKren antolakuntza berritzea izan da eztabaidaren lehen fasearen xedea. Bigarren kolpean emango ditugu ezagutzera ondorio politikoak euskal gizartearen aurrean, udaberri honetan bertan. Garrantzitsua izaten ari da eztabaida, oztopoak oztopo eta baldintza errepresibo zorrotzen gainetik aurrera eramateko gaitasuna izan baitugu.

**20.-Azkenik, Aberri Egunaz….**
Aparteko pozez jaso ditugu aurtengo Aberri Egunaren karietara indar abertzale eta ezkertiarren artean egin diren batasun eta adostasunerako urratsak. Garai berrien adierazgarri zalantzarik gabe. Independentistak sareak Iruñean biltzeko deiari esker ohiko sakabanaketa murriztu da. Ezkertiarrek, abertzaleek, soberanistek, belaunaldi guztietako euskal herritarrek ikusi dute batasun dei horretan beren nahia islatuta. “Alderdien eguna” zirudien garaiekin alderatuz, urratsa handia da. Pozik egoteko modukoa, baina ezin dugu atzendu oraino zenbat bide dugun urratzeko. Nahi baino astiroago bada ere, norabide onean goaz. Urrunduta, sakabanatuta eta kasu batzuetan baita isolatuta ere ospatuko dugu aurtengoa ere. Ospakizun xumeak, gorputza gatibu eta buru-bihotzak Iruñeko kaleetan.